# poems everybody, poems!

Asier Sarasola



batBada

# poems everybody, poems!

Asier Sarasola



*ilustrazioak eta maketazioa:* Idoia Beratarbide

*grabaketak eta nahasketak:* Ander Fernandez

## *Sar-hitza*

*Poemak idazten zituen,*
*bera eskolatzen saiatzen ari zen antolamendu nagusiari*
*fideltasun osoa zor zion maisu beharginari*
*jaramonik egin gabe.*

*Mukizua artean;*
*galtxa motx, orrazkera zaileko txima,*
*poemak idazten zituen poesiaz*
*deus jakin ez arren.*

*Kultuzko ariketan ziharduen antza,*
*hitza hartzen den aldiro*
*derrigorrez egiten ari garena*
*besterik ez obratuz.*

*«Probetxuzko gizona izateko, lanak!»*
*esango luke besteak, patrikako*
*betiko hiruzpalau txanponei etengabe igurtzika.*

*Dena dela,*
*poemak idazten zituen, irakurri;*
*damua eta aldarria gaur,*
*oinazea eta geroa hemen,*
*gaurko hemengoak,*
*auskalo...*

*Izan ere,*
*hitza hartzen den aldiro*
*oharkabean egiten ari garena zeritzon poemagintzari;*
*berez zehazten zail zaizkigun sentimenduak eta gogoetak*
*ezagutzen ez gaituenak ulertzeko moduan*
*eta beste bati entzundako perpausekin,*
*beste batzuekin*
*ikasitako hizkuntza batean edo gehiagotan*
*ematea.*

*Hori bera;*
*hartutakoa jaso eta jasotakoa itzuli.*
*Ekintza arrunta funtsean, jakina.*

*Poemak idazten zituen:*
*barne ahots hori irakurlearen mintzo isil bihurraraztea.*
*Hitza hartzen den aldiro:*
*desgaraiz datozen ele horien bidez biharamunekoak oharraraztea.*
*Ekintza arrunta funtsean:*
*ez genekiela pentsatzen dugun horren gogorapena sorraraztea.*

## Ulertzeko moduan

*Gaurko poema hitzik gabekoa da,*
*ulertzeko modukorik behintzat ez du;*
*ez errimarik, ez neurririk, eta*
*gai, metafora, edo irakaspenik ere ez.*

*Gaurko poema*
*tresna bat da, egiteko modu bat,*
*komunikazioa*
*esanahi biziz hornitzea benetan.*

*Ohiko ulermen mailaz haragoko jakintza*
*dakarkigulako gogora, ahora. Agian,*
*horregatik da hizkuntza*
*arrotzetara ia guztiz itzuli ezina.*



*Zentzugabetasuna, zehazki*

Pieza esanahi gabea gaurkoa, esanahi zehatzik ez edo ezkutuko zentzua duena, baina hitz asmatuz zein eratorriz bada ere, alfabetoa gainditu eta orain darabilgun hizkerak behinola zuen taxuaren oihartzunak itxuratzeko gauza dena.

Edozein hizkuntzaren sakonean erroturiko hots horien bidez, lengoaia bakoitzaren sentikortasuna eta hiztegietan adierazgarrien litekeen hura, mugara eramaten saiatu da gizakia aspalditik.

*Hitz-jokoa, esanahi bikoitza edota kirtenaldia*
*maiz izan dira giza adimenaren bertute,*
*bai eta gizarte harremanen eremu ere;*
*askotan, arau zurrunegien apurtarri.*



***«Erretzaldea zen, eta tobo likiarintsuek***
***jiroskopatu eta ginbaletatzen zuten aitzingibeletan;***
***borogoboak guztiz misehulak ziren,***
***eta errata etikek txiliozentzen zuten.»***

Horrela hasten da **Lewis Carroll** ingelesak Aliceentzat lurralde miragarriko ahoskeran emandako ***«Jabberwocky»*** delakoa, **Manu Lopez Gaseniri** zor diogun euskaran emanak. ***«Snark Ehiza»*** izenekoa idatzi zuen britainiarrak geroago, duela ehun eta berrogeita hamar urte. Baina ez dira atzo idatzitakoak gaurko poemaren lehen adibideak.

*Trufa, laztana eta ixilekoa azaltzeko erabili*
*izan den tresna hori, gaurko poema da;*
*aho anitz eta mendetako bizitza duena,*
*esateko grinaren hauspoak haina.*
*Nahiz eta kaligrafiak zein gramatikak besterik adierazi,*
*hizkuntza ezezagunak erabiltzen ditugunak baino gehiago badira ere,*
*ez zaizkigu arrotz egingo, barne ahots baizik.*

Horrela, gaurko poema idatzi zuen **Tristan Tzara** dadaistak, halaber **Vladimir Holan** txekiarrak ***«Harriaren otoitza»*** izeneko konposizio fonetiko esanahi gabea. Idatzi zuen **Oliverio Girondo** argentinarrak ***En la masmédula*** liburua 1957an. **Samuel Beckett** irlandarrak ere landu zuen lilura zentzugabea gaurko poemarentzat.
**Louis Wolfson** estatubatuarraren kasua aipa genezake **Paul Auster**en bitartez. Wolfsonek eman dezakeen esaldi batean, irakurtzen ari garen gauza ulergaitza hainbat hizkuntzatan ahoskatu beharko da, eta hoskidetasunari erreparatuz, ingelesezko esanahia ondorioztatu. Sarri hitzak moztuta emango ditu, beti ere, esandako moduan irakurleak ondorioztatu behar duenaren arabera, esaldiak osatzeko.

*Sehaska kanta, haur jolas, iseka bide,*
*aztikeria eta errezo,*
*edota isildu ezin gordinaren mozorro gisa*
*ezagutu zenak, konputagailu literaturagile sofistikatu bihurturik*
*eragin lezake baten batek galdetzea*
*gaurko poemak amesten duen elektrika indarrarekin.*

Esaterako, **Raymond Queneau** frantsesak, lege matematikoak aplikatuz, ***«Ehun milioi soneto»*** sortzeko aukera eskaini zion irakurleari izen bereko sonetoan. Bide batez, poemak idazten dituzten ordenagailuen lehen hatsa izan zen hura; etendako zilbor hestearen ordez, entxufea sartzea.

Euskaraz, makina bat adibide aurkituko dugu klasikoetan, **Etxepare**ren ***«Sautrela»*** kasu. Hamaika erreferentzia dago kantu-bildumatan, Oba obatxu, edo **Jon Mirande**ren ***«Kama goli»*** olerkia hor zehar. **Jon Geregiaga** ***Fitola balba karpuki tui*** esaka aurkeztuko nizueke, eta **Koldo Izagirre**, ***Rimmelez*** irudikatutako ***«Otadian»***. Ez dira gehienontzako ezagunak baina, hizlari ari denak ondoen ezagutzen dituen **Urtzi Urkizu**ren ***kakatuak***. Hala ere, denetan ezagunena, poema-liburutegi osoa eskaini digun **Mikel Laboa**ren kantagintza da.

*Izan ere, gaurko poemak ez du hitzik,*
*ulertzeko modukorik behintzat;*
*belarriarekin irakurtzen da, ahozkoa duelako*
*idazkera. Ohiko ulermen mailaz haragoko jakintza*
*gogorarazten digu zain eta muinetatik iritsita.*



Galde iezaiezue **Leonard Cohen, Lluis Llach, Camarón** eta enparauei Lorcaren idatziak musikatzearen errazaz. Kanta itzazue halaber, **Zura** taldekoei esker, Granadakoari **Lauaxeta**k zor zion miresmenaren lekuko diren lau olerki euskaraz emanak. **Harkaitz Cano**ren sute-eskaileratik igarotako norbait «***FGL***» dela pentsatu dezakezue; eta horiek guztiak, izen gutxi batzuk besterik ez aipatzearren, 36ko gerran, eskuinzaleek salatu, guardiazibilek atxilo eraman eta elizaren bedeinkapenarekin fusilatutako **Federico García Lorca**ren omenez, artista ugari hunkitu da-eta. Poesia eta antzerkia landu zituen sortzaile andaluziarra **Walt Whitman** irakurrita hunkitu zen bezala, bestalde.





**Juan Luis Zabala**k euskaratutako ***Poeta New Yorken*** liburuaren egile eta, ikasle garaian **Alberti, Dalí** eta **Buñuel**en lagun izan zenak hitz bakarra aukeratzeko zirriborro kontaezinak desegiten zituen.

*Marrazkitxoak taxutu nonahi,*
*eta zenbaki, gezi, azpimarra,*
*eta oharrez beteriko sortak osatu,*
***Poeta en Nueva York*** *hau kasu,*

***«burua hautsitako animaliatxoekin***
***eta oin idorretako ur zarpailarekin.***
***neke gormutua***
***eta tintontzian itotako tximeleta duen ororekin.»***

*«**Paseotik itzulera**»n ikusitako txoriek*
*beren habiak eraikiko lituzketen gisara.*
*Ondoren, orriei birak emango zizkien eskuetan,*
*zuriuneak non aurkituko,*
*eta lerro bat berridazteari ekingo zion*
*enegarrenez,*
*okinak oreari nola,*
*ilargiak uhinei bezala.*

## *Lorca New Yorken*

***Poeta en Nueva York*** liburua baino lehenagoko ***Romancero Gitano*** haren arrakastak zapuztuta, eta desamodioaren ondorioz Espainiatik Estatu Batuetara ihes egin, eta New Yorken, jendetzaren erretenean arrunt bihurtuta, baztertuen, gutxituen, menpekoen gutasuna aldarrikatzeko behar mindua espainolez idatzitako poesiaren gorenera eraman zuen Federico García Lorcak.

*29ko krisialdia abiatu eta bat iritsi zen bera*
*Amerikara; beltzek nozitzen zuten miseria irten zitzaion*
*idaztera jarri zenean.*
*Miseria eragiten zuen ankerkeriari*
*amesgaizto batetik ateratako joskera eman zion;*
*«urtetako lanketarekin ondutako surrealismoaren tankerak»*
*esango luke kritikariren batek, baina poeta,*
*gauari itzala erantzi ostean, espaloiak*
*betetzen hasitako aurpegi goibelei begira geratuko zen «**Egunsentia**»n:*

***«Egunsentia heldu eta inork ez du ahoan hartzen***
***han ez baita ez biharrik eta ez esperantza posiblerik.***
***Batzuetan txanponek erle-multzo suminduetan***
***haur abandonatuak zulatu eta irensten dituzte.***
***Irteten diren lehenek beren hezurrekin ulertzen dute***
***ez dela ez paradisurik eta ez amodio hostobakandurik izango:***
***badakite zenbaki eta legeen lohira doazela,***
***arterik gabeko jokoetara, fruiturik gabeko izerdietara.***
***Kateek eta zaratek estaltzen dute argia***
***sustrairik gabeko zientziazko desafio likitsean.***
***Auzoetan alderoka dabilen jende insomnioduna dago***
***odolezko naufragio batetik irten berritan bezala.»***



Egun, orduko krisialdiaren pareko omen den sasoi honetan, beltzen oinordeko bat da AEBtako gobernuburu. Hala ere, New Orleansen zer idatziko zukeen gaurko egileak ezpada New Yorken egindako bera, eta Kanariar uharteetako hondartzei buruz, Eskarlata andereño, zer idatziko luke?

Horrela, Poema de Nueva York izan zitekeen ***Poeta en Nueva York*** honen surrealismoa beste ezeren gainetik nabarmentzen duenak, egilearen bertute eta trebezia goretsita, bai, baina ageriko mezuaren gaineko aipamen sakonik azaldu gabe, andaluziarraren salaketa isilarazi nahi du, koldarkeriak edo erruak jota. Ez du «***Haarlemgo erregea***» ezagutzen, horren erresuma suntsitzen besterik ez daki:

***«zeharretara geldo begiratzen duen odola,***
***espartzu zukutuz eta lurpeko loreztiz egina.***
***oinatz batean deskuidatutako alisioa herdoiltzen duen***
***eta tximeletak leihoaren kristaletan disolbatzen dituen odola.»***





Lorcaren New York

Idazleak bere izanaren arrasto oro,
izenburutik hasita, desagerrarazi egiten du, beraz,
ez da Lorca poemotatik mintzo zaiguna; ez da
berari buruzko liburu bat ere; ez da berea eta
ez dagokio haren jabetza:
New Yorken aurkitutakoaz, Lorcaren ustez,
edozein poetak halabeharrez idatziko lukeen testua baizik
ez da. Alegia,
poesiagintzari idazten zion denon izenean
edo, bestela esanda, ahots propiorik ez balu bezala;
jendearen ezpainetan ikasitako hitzak ez besterik ahoskatuta.
Eta «**Erromarantz oihu**» egiten zuen Chrysler dorrearen gainetik,
altzairuzko zakil erraldoiaren mokotik
gurutze-jale, jainko-zale, zeru-gale guztien zentzugabekeria salatuz,
eta gosea kudeatzearen arduradunak. Eta goroldioaren azkartasunaren aurrean,
abiadura handiagoko ezin jakin zeren promesen egile direnak ere bai

**«gure eguneroko ogia nahi dugulako,
haltz-lore eta samurtasun aletu iraunkorra,
Lurraren borondatea bete dadin nahi dugulako,
denentzat bere fruituak ematen dituena.»**

Gizatxarkeriaren ordaina iruditu zitzaion hiria,nahiz eta
lagun eta senideei helarazitako gutunetan bestelakoak esan.
Dena dela, orduko
New Yorkeko izugarrikerien lekukotasuna ematearren,
poesiari iritzi zion jendetasunaren neurria





**«The raven»** («Belea») poema New Yorkeko Evening mirror egunkarian argitaratu zen 1845ean. Haren egile, ordurako ezagun xamarra zen **Edgar Allan Poe** da. Egungo telebista eta irratietan behin eta berriz errepikatutako abestiek lortzen duten arrakastaren parekoa bildu zuen txori malapartatuaren menturak berehala:

*Idazle malenkoniatsuak ondutako eresiaren hegalak*
*edabe merkeenaz bizkortutako marinelen eztarrietan*
*zabaltzen ziren, baina beste batzuk ziren eleak,*
*beste izen batzuk Lenor, bestelako piztiak leiho joka*
*gauerdian zebiltzanak, gaurdainoko biharamun etengabea argituz*
*Belearentzat.*

Jatorrizko testuaren neurri eta errimek horretarako bide eman zion askori, eta aldekoak eta aurkakoak azaldu ziren hedabideetan. Bolo-bolo ibiliagatik ere, 9 dolarreko saria jaso zuen egileak.

***Ilunbe barna beiratuz, egoan nengon, arrituz,***
***kexkan, amesten inork ez amestuak gaurdaino;***
***ixilgoa zan iraunkor, gaurko gentza ez ikurkor,***
***itz bakar au esanik or izan zan: «Lenor!», geldo;***
***nik nun suzmurtu t'anotsak: «Lenor!» birresan gero.***
***Au baizik deus ez geio.***

***Gelan atzera sartzean, dana sukar biotzean,***
***birjotzen entzun nun aurki len baño gogorxkago.***
***«Baitin», esan nun, «baitin da, zerbait leiarrean bada;***
***ikus, beraz, zer degun ta ezkutu au ikert oro.***
***Biotza bekit ekuru t'ezkutu au ikert oro.***
***Aizea da, deus ez geio!»***

***Leioak zabal nitun, orduan, aundizki,***
***antxiñako bela deun bat sartu zan, egak arro.***
***Ez nindun agurtu ere; gelditu ez zan batere;***
***bai, jaun-antz edo andere, ate gañerat igo,***
***an zan Pallasen irudi baten gañerat igo.***
***Igo, t'egon, deus geio.***



**The philosophy of composition** kaleratu zuen gerora Poek eta, liburu honetan, «*Belea*»ren kutsu ironiko nabarmeneko dekonstrukzioa osatu zuen, besteak beste, olerkigintzak izan behar zuenaren adibidea zela bere «*Belea*» aldarrikatuz.

*Edertasuna izendatzerik balego, izaera eman*
*idatzi atsegin, hunkitu eta ulergarri batez, maite duzun*
*lagun galduari eskainitako eresiaren itxura*
*izango luke. Maitearen galerak eraginen duen atsekabeaz*
*gaindi, deus ez da.*

Lenor galdua eta idazlearen emazteak pairatzen zuen eritasun hilgarria parekatu behar ditu irakurleak halabeharrez. Eritasun beltzaren habitik iritsitako hitz bakarreko hegaztia, Poeren kreazio ezagunena da egun. Segida hoskideen maiztasuna zainduz eta beti lelo minbera bera animaliaren mokoan jarriz, narrazioko amorantearen ezinegon gero eta saminagoa, gorantz egiten duen abesti bihurtu zuen.

*Aldaketa ia atzemanezinen errepikapenek,*
*alegia, lelo batek, oinek eta errimek eragiten dute*
*hostoek, elur-malutek, uhinek edo oihartzunek nola,*
*zirrara poetikoa zehaztasun matematikoz.*

***Belak eraginik, ekarri nun, irkaitz 'inik,***
***alki bat ate, irudi, txorien aurreraño;***
***ilazkietan sartuta, jarri nintzan gogoeta***
***erabilkatzen, bai eta zer zuken antxiñako***
***egazti latz, zatar, zingil, beltz orrek esan nahiko***
***kuatuz «Iñoiz ez geio».***

Idaztetik bizitzen saitau zen XIX mende hasieran jaiotako Poe, baina ez zen eskasiatik irtengo bizitza osoan, eta gaizki ordaindutako aldi baterako lanetan eman zituen urteak, mende bete geroago, Frantziako sinbolisten eragin nagusi izateko. **Pessoa**k eta **Borges**ek itzuli zuten, **Baudelaire**k, eta honen itzulpenaren bitartez, **Jon Mirande**k «*Belea*»ri euskaraz eginaraziko zion, *Euzko Gogoa* aldizkarian, 1950. urtean.

Mirande-Poe harremanari buruz idatzi duen **Joseba Sarrionandia**k badu liburu bat deitua ***Marginalia***, **Julio Cortazar**rek kritika konplizeraino estimatzen zuen Poek berak gai bertsuekin behinola mamitu eta izendatu zuenaren antzera. Horiez gain, **Tim Burton** zinemagilearen hastapenetako estetika eta *Vincent* film laburra «*Belea*»rekin zorretan daude. Halaber, *The Simpson's* telesailaren atal batean, enegarren moldaketa ikusteko aukera dago, eta **Leonard Cohen**, **Nick Cave**, **Tom Waits** edo **Jeff Buckley** batek kantatua izateko modukoa dirudien arren, **Lou Reed**ek jarri zuen disko batean. Zer esango dizuet, miresle zenbagaitzak errun ditueztela luma beltzok, deus ez gehio.

***«Azti!» esan nun, «Gaiztakin! Azti bai, txori naiz gaiztakin!***
***Biok degun Jaunagatik, ortze goian baidago,***
***esak mindun oni bertan, donokiko baratzetan,***
***neska guren bat besotan ote dun tinkatuko,***
***neska dizdikor bat Lenor gotzononentzako.»***
***Belak: «Iñoiz ez geio.»***

***«Ele au bedi azkena» nik izuz «txori-txerrena!***
***Ekaitzerat itzul adi plutondar erkiraño!***
***Egatx beltzik ez utz emen ire gezurren oroimen!***
***Nerau laga nazak emen! Utzak ate gañeko***
***irudia! Biotzetik ken zadak ire moko!»***
***Belak: «Iñoiz ez geio.»***





*Gazakoa izatera*

Inon entzungo zenuten **Mahmud Darwish** palestinarrei hitza eman dien poeta zela esatera ausartu denik, poeta eta hitza herri hizkuntzatik sortuko ez balira bezala, bertatik hartu eta jasotako horiek, poeta eta hitza, alegiazko mundu batekoak direlakoan edo.

Hala ere, tresna baino gehiago izan daitezkeenez, gora ditzagun, gora dezagun taupada hautseztatu hura, gora, kasuan kasuko txekpointean sortu den ilaran basamortuko ilunabar epelera ondu diren lerroak. Gora itxarote amorratu hori. Gora itzalitako motorretan ereindako erdeinu isila.

Edo 2002an, Ramalako Mukatan, «***Setio egoeran***» arabiarrak zuen bezala:

***«Bizi luzea nire antzera argiaren horditasunaz***
***tximeletaren argiaz liluratzen denari***
***tunel honen ilunpean»***

*Ez da bizi, ez, Mahmud Darwish,*
*2009 hasi berri honetan, Gazan*
*bizitakoa birsortzeko; jakingo zuen, bazekien eta,*
*esan beharrekoak nola adierazi.*
*Ez da urte erdi hil zela, baina hamarkadak dira*
*buldozerrek eman dituztenak hondamena gaurkotuz.*
*Palestinako harrien hotzikarak,*
*bonbek eraginda baino, taupada kantarion eskutik datoz.*

*Itsasoaren mailaz azpiko bailara idor honetan*
*Itsaso Hileko lohi, gatz eta hauts sargoriak*
*laguntzen nau* **Wyslawa Szymbors***karekin:*

***«Errealista izan beharra dago,***
***aitor dezagun:***
***bizitzak aurrera darrai.***
***Aurrera Hiroshiman eta Verdunen***
***eta Kosovo Polen eta Gernikan.***
***...***
***Hemen, eta Jerikon, gasolindegia duen plazan,***
***...***
***Hemen, harria harriaren gainean den nonahi,***
***izozki saltzaile bat dago umez inguratuta.***
***...***
***Hondamenaren ertzetik,***
***haizeak kapela eraman dio baten bati,***
***eta, ez da saihesten erraza,***
***barre ero bat ateratzen zaigu.»***

*Dastamena zoratu zait, Szymborska*
*Nobel saridun poloniarrak aipatutako plaza hartatik hurbil,*
*mendaz eta kafez.*

*«***Nortasuna***» izeneko poeman, adibidez,*
*Darwish ez zen horietaz ahazten,*
*harrotu ezik, irauterik ez legoke eta.*

***«Dena kendu diguzu,***
***neu eta neure haurrak, guztiok bat***
***kendu gaituzu.***

***Neure biloben irauteko***
***hemen ikusten dituzun harri puskak.***
***Baina zure gobernuak bahitu egin behar omen ditu***
***hauek ere!»***

*Sarraskien azpian*

*Albistegiek eman izan dute Darwishen poema-irakurketen berri. Palestinan bildu zituzten mutu ez geratzeko moduko irudietarako esteka zuen Googlek.*
*Baina liskarrean kixkalitako informazioa nagusitzen da poemen ondoan.*
*Zenbat aldiz ez diren ahoskatu hitza eta herria odoletan...*
*Zenbat aldiz beharrez...*
*Zenbat aldiz ez zaigun atera barre ero bat...*

*Armiarma.com* webgunean, inoiz **Koldo Izagirre**k eta **Itxaro Borda**k euskaratutako arabiarraren 25 poemen artean, ***"Lurra murrizten ari zaigu"*** olerkiko pasarte hauek bihar idatziak dirudite:

***"Lurra murrizten ari zaigu.***
***Azken atakan gaitu metatzen***
***eta geure gorputz atalak eranzten ditugu iragatearren.***
***...***
***Hemen hilen gara. Hemen, azken atakan.***
***Hemen edo hemen***
***eta olibondo bat altxatuko da gure odoletik."***

Jakina, ***"Izarren hautsak"*** ez du fosforo euria esan nahi; ez dago horrek blaitutako baratzan adaxka gazterik, ezta ere uso zuririk. ***Hezurrezko xirulak***, aldiz, **Joseba Sarionandia**k gertaturiko poema bilduman badira dozena erdi olerki Palestinako jendearenak. Elkartasun minduaren eta baliabide estilistikoaren artean kokatzen da Jerusalem muinean duen borroka honen aipamena; gehiegitan sarraskitu dituzte bertako biztanleak, gehiegitan egin irudi literario soil.



*Mugen adina*

*Muga beti aldean daramaten herrien patua,*
*inon paratu ezinik, harriak makulu dituen aldi,*
*bide baten lekuko direnak.*

*Etsipenean giltzapetuta edo bonbapean harrapatuta*
*bizitzetik ihes edo bizitzeari aurre egin diotenen izenean,*
*Maiatz aldizkaritik Itxaro Bordaren itzulpenari esker,*
***Sonia Nigolian** emazte poetaren **"Argi eta itzalezko Armenia":***

***"Hemen harri bakoitzak ipuin bat kontatzen du,***
***arimaren ahotsa berraurkitzen***
***eta herri galduen misterioa argitzen den***
***muga gabeko herri baten elezaharra.***

***Hemen adinik ez da gehiago,***
***hemen bihar hiltzen da,***
***ortzadarrera biderik laburrena hitz ematen***
***digun memoriaren herrian."***





***«Hator, xomorro,***
***jartzan bizkarra honen kontra,***
***hitzen eskutik helduta etortzeko deia dun.***

***Gauarenak eginda gauden,***
***hator, ez zagon beste inor etxean***
***haiek izan ezik, den-denak zauden,***
***hi bezalakoak, ikusten dun,***
***mintzaideak,***
***euria ari din Eperon kalean, eta Janis Joplin.***

***Alejandra, xomorro nere,***
***hator lerrootara, paper***
***arrozezko neke zekenok ze zorra,***
***hator hire ilearekin jostatzen dun fieltrora.***

***(Maite hituen txikikeriak,***
***aboli bibelot d'inanite sonore***
***Tira, borragomak eta gutunazalak***
***Tira, jostailuzko paper-denda bat***
***Tira, koloretako arkatzen xorroa***
***Tira, koaderno marradunak)***

***Hator, gera hadi, edan ezan,***
***euria ari din, bustiko haiz Dauphine kalean,***
***ez zagon jenderik leporaino betetako kafetegietan,***
***benetan, ez zagon jenderik.***

***Bazekinat, zaila dun, hain dun zaila elkar topatzea.***
***Zaila dun edalontzi hau, pospolo hau.***
***Eta ez dun gustuko ikustea***
***nire kontuetan nabilela***
***nire arropa artean, nire liburuetan,***
***eta ez dun gustuko nik nahiago izatea Gerry Mulligan,***
***minik eman nahi gabe hasiko hintzateke biraoka,***
***esango huke bizi al haiz, nola egon hinteke***
***ez zegokenean ezer,***
***zigarroen kea baizik,***
***zertan habil, nola irekitzen dituk***
***begiak egunero?***

***Ez duk posible, esaten dun, ez duk posible.***

***Ados, xomorro,***
***bazekinat bai, baina hala dun.***
***Alejandra, etzan hadi alboan,***
***edan ezan nirekin, ikustan, denei deitu zienat,***
***etorriko ditun mintzaideak, ziur,***
***hirea dun partya, hirea jaia erabat,***
***Erszebetpartya, Karen Blixenpartya***
***atean ditun, bazakiten gure gaua dela,***
***ilea bustita zatozan eskaileretan gora***

*laugarren solairu honetara*
*eta behatxuloetara itsatsiak egongo ditun atsoak.*

*Ikustan Leonora Carrington,*
*Unica Zorn xaguxahar batekin*
*Clarice Lispector, ur biziak, burbuilak*
*argitan igurtzita biluzik labaintzen ditun,*
*Remedios Varo hare-ordulari batekin*
*barruan dar-dar egiten duen laserra*
*eta hirekin ongi portatu zuan neska uruguaiarra,*
*ze hurbil, nolako xake hezea,*
*hori Thelonius baten, amaraunen maison closea,*
*bai, luzea eta ederra izan zitekeen gaua,*
*higan eta Joni Mitchell*
*higan eta Helene Martin*
*higan, mintzaideekin*
*animula tabakoa*
*vagula Anais Nin*
*blandula vodka tonic*

*Ez hadi joan, bertan ez hagoenez,*
*ez joan, jostatu gintezken,*
*ikusiko dun, ikusiko dun bai, iristear ditun*
*marihuana eta Ezra Poundekin,*
*zopa-hauts eta arrainarekin,*
*igeri egin dezan ahazturan, jakina baietz,*
*esponjekin betetako askaren erdian,*
*supositorio eta erantzun gabeko telegrama guztien artean.*
*Olga, keak margotutako zuhaitz bat dun,*
*primerako erretzailea, bai jauna,*
*eta Natalia Ginzburg deslotzen ari dun*
*ekarri ez duen ezpata-belar sorta.*

*Xomorro, ikusi al dun?*
*Hori da. Ongi baino hobeto.*
*Edabe eskoziarra, Max Roach, Silvina Ocampo,*
*sukaldean baten bat kafea egiten zabilen,*
*sugea*
*zenbatzen bi azukrekoxkor muxu bat*
*Leo Ferre*

*Ez hadi leihoekin tematu*
*bestaldea, kanpoaldea*
*Euria ari din Rangoonen*
*Euria ari din Rangoonen*
*Eta?*

*Hemen jolasak. Marmara*
*(Txori kontsonanteak heliotropo bokalak)*
*Hator, xomorro. Egon hadi geldi.*
*Ez zagon leihorik, ez kanpoan deus,*
*eta ez din euria ari Rangoonen.*
*Hemen jolasak.»*

Julio Cortazarrek eskaini zizun poema hori, Alejandra. ***Salvo el Crepusculo*** liburuan aurkituko duzu. Alejandra, abizenez Pizarnik. Río de la Plataren alde banatakoak izaki, Parisen elkar ezagutu zenuten biek. Ez, ez zen amodioa zuena. Aldiz, litekeena da ***Rayuela***ren egileak bere katuekin zerabilen hizkeraren arabera idatzitako oroitarri paperera bildua izatea honako eskaintza.

***Alejandra Pizarnik:***
*Poemen bidez ulertzen zenuen mundua;*
*idazten zenuen hartan bizitzen saiatu zinen.*
*Bizitza osoa eman zenuen poema berean;*
*literaturaz beste egin zenuen zeure burua.*

*Zure suizidioa aipatuko dute biografoek,*
*zure sexu grinen inguruko zurrumurruetan itoko dira ahoberoak,*
*zure ipuin odoltsuenaz izutuko dira mengelak.*

*«Hitzak jakinik,*
*oro da, berez,*
*adieraztezina.»*
*Esanez etsitzen zenuen.*

*Hizkuntzaren zubiak amiltzean eta perpausak ez zirenean iristen,*
*zure ahotsa zen ibaia.*



Alejandra, hainbat urte lehenagoko ***Árbol de Diana*** liburuan, Cortazari eta Aurorari eskaini zenizkien

***«Nire hezurrak gauean distiratzen,***
***nire hitzak harri bitxi lez***
***haitz bihurtutako txoriaren eztarri gordinean,***
***nire berde maiteena,***
***nire ubel beroa,***
***nire bihotz soilik misteriotsua.»***



## *Hitz-atzea*

*Eskerrak eman behar dizkiet*
*Anderri eta Idoiari,*
*bietako bati ahoskerari kolorea eman diolako,*
*eta besteari*
*behar bezalako margoz josteagatik doinuak hitzentzako.*
*Oierri aurkitu dudan beste niagatik.*
*Batbadari*
*garrantzizkoena ez dela literatura goraipatzeagatik.*
*Mikelazuloko ateei irekitako mundu guztiengatik.*
*Lierniri komatxo eta hitz egoki bakoitzarengatik.*
*Eskerrak zuri ere, irakurle entzule, zuriuneak osatzen*
*jakingo duzulako, zergatik jakin ere.*

*Ez ezazu espero nik jakitea*
*zertara datorren idatz-entzunezko bilduma lantxo hau.*
*Ez dut nire amets eta apeten mamia erabat ezagutzen.*
*Mania ere ez.*

*Horregatik, poesia abiapuntuan*
*eta pertsona helmugan duen halamoduzko bidean*
*aurrera egin dugu biok. Bai,*
*helmugan daude pertsonak, funtsari dagokion tokian.*
*Poesia, poema-liburua, poema, poeta eta pertsona*
*azaleratu zaizkigu zuriuneek aurrera egin ahala.*

*Eta arrazoi duzu, izan zitezkeen ere beste batzuk*
*aipatutako egileak, lanak, dena delakoak, baina*
esan dizut apeta eta ametsa ditudala lelozain
informazio hutsa, testuaren aipamena eta nire gogoetak
tartekatzen dituen bost ataleko liburu ale bakar honetan.
Edo, bestela esanda:
Testuketan Herri Irratiko irratsaioan proposatutako irakurketak.

Baina ez zaitez engaina,
hemen poems everybody, poems!
Wolfson, Szymborska edo Gerediaga esaka ari denak,
poesia aditzen du, halaber, lankidearen kirtenaldietan,
amonaren errietan edo akats ortografiko batean.
Zer egingo zaio.

Izan dira hau baino lan hobeak, osoagoak,
euskara jatorragoan emanak,
hainbeste zuzenketarik behar izango ez duten itzulpenekin,
baina denak ere, hau bezain osatu gabeak dira.
Irakurriko dituzu gerokoenak, jakina.
Jakingo duzu, noski,
zaharragoen lekuko naiz Rilkeren lagun
poeta gaztearen biloben bilobentzako aitortza ematen
zure aurrean.